# URTEAN ZEHARREKO X. DOMEKA
## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Nahiago dot maitasuna sakrifizioak baino.*

Oseasen Profezia liburutik

*Os* 6, 3-6

Ahalegindu gaitezan Jauna ezagutzen:
egunsentia baizen ziur helduko da,
neguko euria lez etorriko jaku,
lurra bustitzen dauan udabarriko euria lez.

«Zer egingo dot zugaz, Efraim?
Eta zer zugaz, Juda?
Zuen maitasuna goizeko lainoa lakoa da,
behingoan kentzen dauan goizeko iruntza lakoa.
Horregaitik zauritu ditut profeten bitartez,
horregaitik emon deutset heriotza neure ahoko hitzez.
Nire epaiak argiak lez egiten dau distira,
nahiago dot-eta maitasuna sakrifizioak baino,
Jainkoaren ezaguera erre-opariak baino».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 50 [49], 1 eta 8. 12-13. 14-15 (R/. ik. 23b)

R/. **Zuzen dabilenari deutsat**
**Jainkoaren salbamena erakusten.**

V/. Jaunak, jainkoen Jainkoak, berba egiten dau:
dei egiten deutso lurrari batzarrera
eguzkiaren sorlekutik sarlekura.
Ez zaitut salatzen zeure sakrifizioakaitik;
zure erre-opariak aurrean ditut beti. R/.

V/. Gose banintz, ez neuskizu zuri esango,
neurea dot-eta mundua eta bertako guztia.
Zezenen okela jaten ete dot, bada,
edota akerren odola edaten? R/.

V/. Eskeini esker onezko oparia Jainkoari,
bete zeuk agindutakoak Goi-goikoari.
Dei egidazu larrialdian;
libratuko zaitut, eta zuk goratuko nozu. R/.

## II. Irakurgaia

*Indartu egin zan sinismenean;*
*holan, Jainkoak egia inoala autortu eban.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei

egindako epistolatik

*Erm* 4, 18-25

Senideok: Abrahamek sinistu egin eban, ezelako itxaropiderik ez egoanean itxaropenari eutsiz; holan, herri askoren aita egin zan, Jainkoak esan eutsonaren arabera: «Horrenbeste izango dira zure ondorengoak».

Ez jakon moteldu sinismena, bere gorputza ia hilda ebala –ehun urteak hurrean ebazalako– eta Sararen sabela be agorra zala ikusi arren. Jainkoaren agintzariaren aurrean, Abraham ez zan sinisgogor izan, ezta zalantzan ibili be, indartu egin zan, ostera, sinismenean; holan, Jainkoak egia inoala autortu eban, ziur ekian-eta Jainkoak badauala ahalmena emondako berbea betetzeko. Horrexegaitik, hain zuzen, zintzotzat hartu eban Jainkoak.

Baina Liburu Santuak ez dau hori hareekaitik bakarrik esaten, gugaitik be badino; gu be, Jesus gure Jauna hildakoen artetik biztu ebanagan sinisten dogunok, sinismenari esker zintzotzat hartuko gaitu-eta Jainkoak: gure pekatuakaitik emon eben-eta Jesus heriotzara eta gure salbazinorako izan

zan biztua.
Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Lk* 4, 18

R/. **Aleluia.**
V/. Behartsuei Barri Ona emotera bialdu nau Jaunak,
katiguei askatasuna iragartzera. R/.

## EBANJELIOA

*Ez naz zintzoei dei egitera etorri, pekatariei baino.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa san Mateoren liburutik

*Mt* 9, 9-13

Aldi haretan, Jesusek, bidez joiala, Mateo eritxon gizon bat ikusi eban zergak batzeko mahaian jesarririk, eta esan eutson: «Jarraitu Niri». Mateok zutundu eta jarraitu egin eutson.

Geroago, Jesus mahaian egoan Mateoren etxean; beste zergalari eta pekatari asko be etorri eta mahaian jesarri ziran Jesusegaz eta honen ikasleakaz. Fariseuek, hori ikustean, esan eutsien ikasleei: «Zelan jaten dau zuen Maisuak zergalariakaz eta pekatariakaz?»

Hori entzutean, Jesusek esan eutsen: «Ez dabe osasundunek sendagile beharrik, gaixoek baino. Hoba zeunkie Jainkoak esandako honetaz jaubetuko bazinie: “Nahiago dot errukia sakrifizioak baino”. Ez naz zintzoei dei egitera etorri, pekatariei baino».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO X. DOMEKA
## B urtean

### I. IRAKURGAIA

*Alkarren arerio egingo zaituet*
*hi eta emakumea, hire eta haren ondorengoa.*

Hasiera liburutik

*Has* 3, 9-15

Adamek zuhaitzetik jan ondoren, Jainko Jaunak dei egin eta esan eutson: «Non zara?» Harek erantzun: «Zure oin-hotsa baratzean entzun dodanean, bildurtu eta gorde egin naz, narrugorri nengoalako». Jainkoak esan eutson: «Eta zeinek jakinazo deutsu narrugorri zengozala? Galazo neutsun zuhaitzeko frutua jan dozu ala?» Gizonak erantzun: «Laguntzat emon deustazun emakumeak eskeini deust frutua, eta

jan egin dot». Orduan, Jainko Jaunak esan eutson emakumeari: «Zer egin dozu?» Emakumeak erantzun: «Sugeak engainatu nau eta jan egin dot».

Eta Jainko Jaunak esan eutson sugeari:

«Hori egin doalako,
madarikatua izango haz
abere guztien eta basapiztia guztien artean;
sabel gainean ibiliko haz arrastaka
eta hautsa jango dok heure bizitzako egun guztietan.
Alkarren arerio egingo zaituet hi eta emakumea,
hire eta haren ondorengoa;
honek burua zapalduko deua, eta hik orpotik helduko deutsak».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 130 [129], 1-2. 3-4. 5-6b. 6c-8 (R/. ik. 7bc)

R/. **Jaunagan dago errukia,**
**harengan askatasun ugaria.**

V/. Barru-barrutik dei egiten deutsut, Jauna;
entzun, Jauna, nire ahotsa!

Begoz zuhur zure belarriak
nire erregu-oihura. R/.
V/. Erruak kontuan badozuz, Jauna,
nork iraun zutunik, ene Jauna?
Baina Zuri parkamena dagokizu,
Zuganako begirunean bizi gaitezan. R/.
V/. Jaunaren zain nago, zain dago nire barrua,
haren hitza dot itxaroten;
nire barrua Jaunaren gogo biziz dago,
gauzaina egunsentiaren gogo biziz baino gehiago. R/.
V/. Gauzainak egunsentia lez,
itxaron begi Israelek Jaunagan,
Jaunarena da-eta maitasuna,
harena askapen betea.
Harek askatuko dau Israel
bere erru guztietatik. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Sinisten dogu, eta horregaitik hitz egiten dogu.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 4, 13–5, 1

Senideok: Hau dino Liburu Santuak: «Sinistu neban, eta horregaitik hitz egin neban». Guk be, sinismen-espiritu bera dogula, sinisten dogu eta

horregaitik berba egiten dogu, jakinik, Jesus Jauna biztu dauanak biztuko gaituala gu be Jesusegaz, eta honen ondoan ipiniko gaituala zuekin batera. Hau guztia zuen onerako da, Jainkoaren dohaia askorengana zabaltzean, esker ona be askorengan ugaritu dadin, Jainkoaren aintzarako.

Horregaitik, ez dogu adorea galtzen. Gure gorputza hondatzen badoa be, barrutik indarbarritzen gabiltz egunetik egunera. Izan be, oraingo gure nekeek, une batekoak eta arinak izanik, betikoa dan aintza parebakoa prestatzen deuskue. Geure begiak ez doguz ipintzen ikusten diran gauzetan, ikusten ez diranetan baino; ikusten diranak behin-behinenekoak dira-eta; ikusten ez diranak, barriz, behin betikoak.

Jakin badakigu, mundu honetan bizileku dogun oihal-txabola hau hondatzen bajaku be, badogula zeruan betiko bizilekua, Jainkoak prestatua, ez giza eskuz egina.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Jn* 12, 31b-32

R/. **Aleluia.**
V/. Oraintxe galduko dau bere ahalmena
mundu honetako buruzagiak, dino Jaunak;
eta Nik, lurretik jasoko nabenean,
Neugana erakarriko ditut danak. R/.

## EBANJELIOA

*Satanasenak egin dau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 3, 20-35

Aldi haretan, Jesus etxera bihurtu zan bere ikasleekin. Barriro be jentetza handia batu zan, eta ezin eben jatordurik be egin Jesusek eta ikasleek. Jesusen ahaideak, hori jakitean, bera hartu eta eroateko asmotan etorri ziran ze, burutik egina egoala esaten eben.

Jerusalemdik jatsitako lege-maisuek hauxe inoen Jesusi buruz: «Beeltzebul dauka honek barruan», eta «Deabruen buruzagiaren indarrez botatzen ditu honek deabruak». Jesusek beragana deitu eta parabola honeen bidez berba egin eutsen: «Zelan bota leike Satanasek Satanas? Bere barruan zatiturik dagoan erreinuak ezin dau iraun. Bere barruan zatiturik dagoan

familiak ezin dau iraun. Era berean Satanasek be, bere buruaren aurka jagi eta zatiturik badago, ezin dau iraun; harenak egin dau. Ezin leiteke inor sartu indartsu baten etxean lapurretara, aldez aurretik ha lotzen ez badau; orduan, bai, harrapatu leikez haren etxeko ondasunak.

Benetan dinotsuet: Dana parkatuko deutse Jainkoak gizon-emakumeei, pekatuak eta esan leikiezan birao guztiak; baina Espiritu Santuaren aurka birao egiten dauanak ez dau sekula parkamenik izango; errudun izango da betiko». Espiritu gaiztoa eukala inoenei erantzun eutsen hau.

Jesusen ama eta anai-arrebak etorri ziran eta, kanpoan gelditurik, deituazo egin eben. Jente asko egoan Jesusen inguruan jesarrita, eta esan eutsoen: «Aizu, hor dituzu kanpoan ama eta anai-arrebak, zeure bila».

Jesusek erantzun eban: «Nortzuk dira nire ama eta anai-arrebak?» Eta, inguruan jarrita zituanei begiratuz, esan eban: «Honeek ditut Nik ama eta anai-arreba. Jainkoaren nahia egiten dauana, horixe dot Nik anaia, arreba

eta ama».
Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO X. DOMEKA
## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Bizi da zure semea.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 17, 17-24

Egun hareetan, gaixotu egin zan Sareptako alargunaren semea, oso larri gaixotu be, arnasa barik gelditzeraino. Emakumeak esan eutson Elias profetari: «Ez dot zugaz ezer be jakin nahi, Jainkoaren gizon! Nire okerren oroipena barritzera eta nire semea hiltzera etorri ete zara?»

Eliasek erantzun eutson: «Ekarri egidazu semea». Hartu eutson umea altzotik, eroan eban gora, bera bizi zan gelara, eta bere ohean ipini eban. Ondoren, honan egin eutson dei Jaunari: «Jauna, ene Jainkoa, ni bere etxean hartu nauan alargun hau be atsekabetu egin behar ete dozu, semea hilarazo?» Gero, hiru bider etzun zan umearen gainean eta oihu egin eutson

Jaunari, esanez: «Jauna, ene Jainkoa, otoi, etorri dakiola barriro ume honi bizi-arnasa».

Entzun eban Jaunak Eliasen deia eta etorri jakon bizi-arnasa umeari eta berbiztu egin zan. Eliasek, orduan, umea hartu, goiko gelatik jatsi eta amari emon eutson, esanez: «Hona! Bizi da zure semea».

Emakumeak esan eutson Eliasi: «Orain badakit Jainkoaren gizona zarana, eta zuk dinozuna egiaz Jaunaren hitza dana».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 30 [29], 2 eta 4. 5-6. 11-12a eta 13b (R/. ik. 2a)

R/. **Goratuko zaitut, Jauna, onik atara nozulako.**

V/. Goratzen zaitut, Jauna, onik atara nozulako,
arerioei nire lepotik pozten itzi ez deutsezulako.
Jauna, Herio-lezatik atara nozu,
zulora jaisteko nengoala bizibarritu. R/.

V/. Kanta Jaunari, haren fededunok,
goratu egizue, haren santutasuna gogoratuz.

Une baterako da haren hasarrea,
bizi guztirako haren onginahia.
Arratsean negarra da gurean,
poz-oihua goizean. R/.
V/. Entzun, Jauna, eta erruki nitaz,
izan zakidaz laguntzaile, Jauna.
Negarra dantza bihurtu deustazu,
Jauna, ene Jainkoa, eskerrak emongo deutsudaz beti. R/.

## II. Irakurgaia

*Gogoko izan eban bere Semea niri agertzea, haren Barri Ona jentilei iragarri neien.*

San Paulo Apostoluak Galaziarrei egindako epistolatik

*Ga* 1, 11-19

Senideok: Jakin behar dozue nik iragarri deutsuedan Barri Ona ez dala gizakien asmakizuna, ez dot-eta inongo gizakirengandik hartu edo ikasi; Jesu Kristok agertu eustan.

Ezaguna dozue, izan be, noizbaiteko nire jokabidea judaismoan: zein gogor pertsegitu neban Jainkoaren eleiz alkartea, bera hondatu nahirik. Judaismoaren barruan, neure adineko herritar askori aurrea hartzen neutsan, geure asaben ohiturak betetzen askoz sutsuago nintzan-eta.

Baina Jainkoak, jaio baino lehen bereizi eta bere onginahiaz dei egin eustanak, gogoko izan eban bere Semea niri agertzea, honen Barri Ona jentilei iragarri neien. Nik, orduan, ez neutsan hazur-maminezko inori aholkurik eskatu, ez neban ni baino lehenagotik apostolu ziranen bila igon be Jerusalemera; behingoan Arabia aldera jo neban; gero, Damaskora bihurtu nintzan barriro.

Handik hiru urtera, Pedro ezagutzera Jerusalemera igon eta hamabost egun egin nebazan beragaz. Beste apostolurik ez neban ikusi, Jaunaren anaia Santiago izan ezik.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Lk* 7, 16

R/. **Aleluia**.

V/. Profeta handia sortu da gure artean,
eta Jainkoa bere herria salbatzera etorri da. R/.

## EBANJELIOA

*Gazte, zuri dinotsut: jagi!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 7, 11-17

Aldi haretan, Nain izeneko herrira joan zan Jesus, bere ikasleak eta jente asko lagun zituala. Herriko sarrerara hurreratu zanean, hildako bat, ama alargun baten seme bakarra, eroien lur emotera. Herriko jente asko joian amagaz.

Hau ikustean, errukitu egin jakon Jauna eta esan eutson: «Ez egin negarrik!» Hurreraturik, hilkutxa ikutu eban, eta eroienak gelditu egin ziran. Orduan, esan eban: «Gazte, zeuri dinotsut: jagi!» Jagi zan hildakoa eta berbetan hasi, eta Jesusek amari emon eutson.

Bildurrak hartu zituan danak eta Jainkoa goresten eben, esanez: «Profeta handia sortu da gure artean». Eta beste hau be bainoen: «Bere herria salbatzera etorri da Jainkoa».

Judean eta inguruko lurralde guztian zabaldu zan gertaera honen barria.

Jaunak esana.